

# Maoriera

**Maoriera**[1] (maorieraz: *Māori* [ˈmaːɔɾi ahoskatua]; edo *te reo Māori* [tɛ ˈɾɛɔ ˈmaːɔɾi], «maori hizkuntza») maori etniakoen mintzaira da. Zeelanda Berriko (maorieraz: *Aotearoa*) hizkuntza ofiziala, ingelesarekin batera.

Hala ere, hizkuntza gutxitua da; eta, etorkizunera begira, egoera ez da ona. Gutxi gorabehera, 150.000 hiztun dituela kalkulatzen da (zeelandaberritar guztien % 3,75, eta maorien % 14 inguru). Egun, hiztun gehienak Ipar uharteko iparraldean eta ekialdean bizi dira, Northland eta Gisborne eskualdeetan zehazki.

Polinesiar jatorrikoa da, eta senidetzat ditu beste hiru hizkuntza: rarotongan (Cook uharteak), tahitiera eta hawaiiera.

Maoriera Zeelanda Berrira Polinesiako biztanle batzuek eraman zuten, ziur aski Tahititik hara joandakoek, orain dela 600-800 urte.

| Maoriera | |
|---|---|
| Reo Māori | |
| **Datu orokorrak** | |
| **Lurralde eremua** | Zeelanda Berria |
| **Hiztunak** | 100.000–160.000 inguru |
| **Rankinga** | *Ez 100 mintzatuenen artean* |
| **Ofizialtasuna** | Zeelanda Berria |
| **Eskualdea** | Polinesia |
| **UNESCO sailkapena** | 2 zaurgarria |
| **Araugilea** | Maoriera Batzordea (*Te Taura Whiri i te Reo Māori*) |
| **Hizkuntza familia** | |
| giza hizkuntza | |
| austronesiar hizkuntzak | |
| Malaysiar-polinesiar hizkuntzak | |
| Nuclear Malayo-Polynesian languages (en) | |
| Central-Eastern Malayo-Polynesian (en) | |
| Ekialdeko malayo-polinesiar hizkuntzak | |
| Ozeaniar hizkuntzak | |
| Central–Eastern Oceanic languages (en) | |
| Central Pacific languages (en) | |
| Polynesian languages (en) | |
| Tahitic languages (en) | |
| **Informazio filologikoa** | |

## Eduki-taula



## Polinesiako ekialdearen hizkuntzen sailkapena

| | |
|---|---|
| **Hizkuntza-tipologia** | hizkuntza isolatzailea eta aditza-subjektua-objektua |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa eta Māori writing system (en) |
| | **Hizkuntza kodeak** |
| **ISO 639-1** | mi |
| **ISO 639-2** | mao mri |
| **ISO 639-3** | mri |
| **Ethnologue** | mri (http://www.ethnologue.com/language/mri) |
| **Glottolog** | maor1246 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/maor1246) |
| **Wikipedia** | mi (https://mi.wikipedia.org) |



Polinesiako ekialdearen hizkuntzak.

- Rapa Nui.
- Ekialdeko erdialdekoak:
  - Rapan.
  - Tahitiarrak: Tahitiera, rarotongan (Cook Uharteak) eta maoriera.
  - Markesarrak: Markesera eta hawaiiera.

# Historia

## XIX mendea

- 1814an, misiolari batzuk saiatu ziren, lehenengo aldiz, maoriera alfabeto erromatarrez idazten.
- 1840an, Waitangiko ituna sinatu zuten. Orduan, Zeelanda Berriko hizkuntza nagusia zen artean.
- 1842an, lehenengo egunkaria argitaratu zuten.
- 1850eko hamarkada inguruan hasi zen haren gutxitze prozesua, Erresuma Batutik joandako pertsonen hizkuntza nagusituz joan zen bitartean, ingelesa alegia. 1858an 56.000 maori inguru erroldatu zituzten.
- 1860ko hamarkadatik, eskolan maoriera erabiltzea debekatzen hasi ziren; horren ondorioz, hizkuntzaren prestigioa murriztu egin zen.1867an, berriz, *Native Schools Act* dekretua kaleratu zuten.

## XX. mendea

- 1920 inguruan, Sir Āpirana Ngata hasi zitzaien maori komunitateei ohartarazten hizkuntzaren erabileraren garrantziari buruz.
- 1930eko hamarkadan, maori gehienek artean egiten zuten maorieraz.
- 1940ko hamarkadan hasi zen hirietarako emigrazio handia. Hortik aurrera hiztun galera izugarria izan zen.
- 1961ean, *Hunn Report* delako txostenak maoriera jo zuen maorien bizimoduaren aztarna edo erlikiatzat.
- 1970eko hamarkadaren hasieran, hiriguneetako talde batzuek (*Ngā Tamatoa* eta *Te Reo Māori Society*) ekin zioten hizkuntzaren biziberritzeari.
- 1975 inguruan, inkesta batek azaldu zuen maorien % 20k (70.000 pertsona, gehienak adinekoak) bakarrik hitz egin zezaketela jariotasunez. Urte hartan, *Ngāti Raukawa*, *NgātiToa* eta *Te Āti Awa* taldeek hasi zuten *Whakatipuranga Rua Mano* hizkuntza ekimena.
- 1978an, *Rūātoki School* delakoa lehendabiziko eskola elebiduna bilakatu zen.
- 1980ko hamarkadan hasi ziren lehenengo irrati emisioak: *Te Upoko o te Ika* eta *Radio Ngāti Porou*.

- 1986an, 50.000 hiztun kalkulatu zituzten, maorien % 12.
- 1987an, *Māori Language Act* dekretuaren bidez, maorierak estatus ofiziala lortu zuten. *Te Taura Whiri i te Reo Māori* eta *Te Kōhanga Reo National Trust* erakundeak sortu zituzten.
- 1993an, *Te Māngai Pāho* hedabideetako agentzia sortu zuten. Ordurako, tokian tokiko 20 irratik emititzen zuten herrialde osoan.
- 1995an, *He Taonga Te Reo*, hizkuntzaren urtea, ospatu zuten.
- 1997an kalkulatzen zen 13.000 haurrek, 32.000 ikaslek ertaineko zikloetan eta beste 55.000 heldu inguruk maoriera ikasten zutela.

### XXI. mendean

- 2001ean, *Health of the Māori Language Survey* inkestak 136.700 hiztun kalkulatu zituen guztira.
- 2003an egin zituzten *7th Polynesian Languages Forum – Te Reo i te Whenua Tipu* jardunaldiak, Wellingtonen.
- 2004ko martxotik Māori Television (http://www.maoritelevision.com/) hasi zen emititzen, ele bitan.

## Hiztunen mapa

Esan bezala, hiztun gehienak bizi dira Ipar uhartean, zehazki iparraldeko muturrean: Northland edo Te Tai Tokerau eskualdean 45.000 maori inguru bizi dira, Ngāpuhi, Te Aupōuri, Te Rarawa, Ngāti Kahu, Ngāti Kurī eta Ngāti Whātua iwi-etan.

Hawke's Bay eskualdean (Te Matau-a-Māui), bereziki, Te Urewera aldean. Waikaton, Taupo aldean batik bat. Eta komunitate handienak, azkenik, Gisborne eskualdean (Te Tai Rāwhiti) daude, East Cape-ko inguruetan.



Gorriz eta laranja ilunaz markatuta agertzen dira komunitaterik trinkoenak.

Australian kalkulatzen da 12.000 hiztun bizi zirela 2016an.

## Hitzak eta esamoldeak

- *Kia ora*: Kaixo.
- *Kia kaha*: Indartsua izan.
- *Tāne*: Gizon.
- *Wahine*: Emakume (*wāhine*, emakumeak).
- *Aroha*: Maitasun.
- *Whare*: Etxe.
- *Ika*: Arrain.
- *Tohorā*: Balea.
- *Kuri*: Txakur.
- *Rākau*: Zuhaitz.
- *Puke*: Muino.
- *Marama*: Ilargi.
- *Whetu*: Izar.
- *Moana*: Itsaso, laku.

- *Awa*: Ibai.
- *Waka*: Kanoa.
- *Wai*: Ur.
- *Ata*: Itzal.
- *Wai*: Nor?
- *Aha*: Zer?
- *Hea*: Non?
- *Āhea*: Noiz?
- *E hia*: Zenbat (gauza)?
- *Tokohia*: Zenbat (jende)?
- *Pēhea*: Nola?
- *Tēhea*: Zein?

# Erreferentziak


1. ↑ Euskaltzaindia. *38 Munduko estatu-izenak, herritarren izenak, hizkuntza ofizialak eta hiriburuak.* (https://www.euskaltzaindia.eus/dok/arauak/Araua_0038.pdf).


# Kanpo estekak

- Maoriera Batzordearen webgunea (http://www.tetaurawhiri.govt.nz)
- Egunkariak (http://www.sadl.uleth.ca/nz/cgi-bin/library?a=p&p=about&c=niupepa&l=mi&nw=utf-8)
- Ngata hiztegi elebiduna (http://www.learningmedia.co.nz/nz/online/ngata/)
- Webster's hiztegia (http://www.websters-online-dictionary.com/definition/Maori-english/)
- Fonologiaz (ingelesez) (http://www.maorilanguage.info/mao_phon_desc1.html)
- Maoriera ikasteko (ingelesez) (http://wikitravel.org/en/Maori_phrasebook)


Hizkuntza honek bere Wikipedia du: Bisita ezazu.



To ɔar

### Nabigazioa

- Azala
- 
- Txokoa
- Albisteak
- Aldaketa berriak
- Ausazko orria
- Laguntza
- Dohaintza egin

